# HILETEA-02 (garizuma)

**Monición de entrada**

Ondo etorri, senideok, hileta eleizkizun honetara. **I.** izango dogu gogoan, eta berari esker entzungo deutsagu Jainkoari, eta adoretuko gaitu harek gure eguneroko bizitza esker onean egiteko.

Es Dios quien nos convoca a  la oración, al encuentro de hermanos que le agradecen la vida de **N.** Tendremos la oportunidad de escucharle y de vernos alentados a vivir una vida agradecida, que un día Dios mismo la corona en su gloria.

No seamos meros espectadores. Unámonos en la oración y el canto, arropando a los familiares de **N**.

**Sarrera abestia**

**Dei egingo deust, nik entzungo,**
**ospez jantzi ta libratuko.**
**Bizi luzea nik emongo,**
**salbamenera eroango.**

1. *Goi-goiko Jauna babes dozuna, esan zure Jaun onari:*
*«Oi Jainko, zeugan dot konfiantza, zeu zaitut bizi ta sari».*

**Abadearen agurra**

† Jaungoiko gure Aitaren eta Jesu Kristo gure Jaunaren grazia eta bakea zuekin.

— Bedeinkatua Jaungoikoa,
Jesu Kristo gure Jaunaren Aita.

**Pazko zuziaren biztea**

Hay momentos en nuestra vida en que nos vemos sumidos en la oscuridad. Al encender el Cirio pascual expresamos nuestra fe en la resurrección de Cristo que es quien ilumina nuestra vida y nos adentra en el horizonte de

Dios. Participamos de su luz, y lo expresamos cantando.

**JESUS MUNDUKO ARGIA**
**Jesus zinezko egia. Jesus betiko bizia.**

[2] *Gure bihotz barruan biztu zure argia*
*gaitezen gu munduan argi Jainkoz betia.*

**EGIN DAIGUN OTOITZ**

Zeu autortzen zaitugu, Jainko ona,
bizitzearen sortzaile eta betetzaile.
Hildako gure senide **I.**
bizitzearen betetasunean ikus daigula
eskatzen deutsugu; eta guk
bizitzearen dohaia eskertzen jakin daigula,
alkarri ondoesana eta maitasuna erakutsiz.
Zure Seme Jesu Kristo...

**PRIMERA LECTURA**

Hay quien cree vivir mejor sin Dios, porque le prohíbe el placer. Si buscamos crecer en humanidad, seguro que trataríamos de escucharle, y él nos invitaría a mirar nuestro interior. A ello nos ayuda el ayuno.

**De la profecía de Joel** 2, 12-18

«Ahora —oráculo del Señor—
convertíos a mí de todo corazón
con ayuno, con llanto, con luto.
Rasgad los corazones y no las vestiduras;
convertíos al Señor, Dios vuestro,
porque es compasivo y misericordioso,
lento a la cólera, rico en piedad;
y se arrepiente de las amenazas».
Quizá se arrepienta y nos deje todavía
su bendición, la ofrenda,
la libación para el Señor, vuestro Dios.
Tocad la trompeta en Sión,
proclamad el ayuno, convocad la reunión.
Congregad al pueblo, santificad la asamblea,
reunid a los ancianos.
Congregad a muchachos y niños de pecho.

***Jaunak esana***

**Erantzun salmoa (Sal 26)**

Salmo honegaz gure uste ona Jainkoagan jartea bilatzen dogu, eta ha ondo-ondoan somatzea. Alkarregaz esan daigun.

**R/. JAUNA DOT ARGI ETA SALBAMEN**

El Señor es mi luz y mi salvación,
¿a quién temeré?
El Señor es la defensa de mi vida,
¿quién me hará temblar? R.

**R/. JAUNA DOT ARGI ETA SALBAMEN**

Una cosa pido al Señor, eso buscaré:
habitar en la casa del Señor
por los días de mi vida;
gozar de la dulzura del Señor,
contemplando su templo. R.

**R/. JAUNA DOT ARGI ETA SALBAMEN**

Escúchame, Señor, que te llamo;
ten piedad, respóndeme.
Tu rostro buscaré, Señor,
no me escondas tu rostro. R.

**R/. JAUNA DOT ARGI ETA SALBAMEN**

Espero gozar de la dicha del Señor
en el país de la vida.
Espera en el Señor, sé valiente,
ten ánimo, espera en el Señor. R.

**Evangelio**

No es cuestión de hacer cosas, por muy buenas que sean, o por más que estén mandadas. Es cuestión de que lo que hagamos o digamos… nos humanice. Jesús nos indica el modo. Acojámoslo.

**AINTZA, JESUS, ZURI BETI:**
**ZU ZARA GURE ARGI.**

Mt 6, 1-6. 16-18

✠ **Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik**

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen ikasleei: «Begira, gero: ez egin zuen egintza onak jentaurrean, ikusi zaiezan! Osterantzean, ez dozue zeruetan dagoan Aitaren saririk izango.

Limosna emotean, beraz, ez ibili aurretik turuta joten, itxurazaleak sinagogetan eta kaleetan ibiltzen diran lez, jenteak txalotu daizan. Egia esan, jaso dabe horreek euren saria. Zuk limosna emotean, ostera, ez bei jakin zure ezkerrak zer egiten dauan eskumak; holan, zure limosna ezkutuan gelditukо da; eta ezkutuan be ikusten dauan zeure Aitak emongo deutsu saria.

Otoitz egitean, ez egin itxurazaleen erara; ze horreek sinagogetan eta plaza-ertzetan zutunik otoitz egitea maite dabe, jenteak ikusi daizan. Egia esan, jaso dabe horreek euren saria. Zu, ostera, otoitz egitean, sartu zaitez zeure gelan, itxi atea eta eiozu otoitz ezkutuan dagoan zure Aitari; eta ezkutuan be ikusten dauan zeure Aitak emongo deutsu saria.

Barau egitean, ez agertu bekokilun, itxurazaleak lez; ze aurpegia itsusitu egiten dabe, barau egiten dabela jenteari agertzeko. Egia esan, jaso dabe horreek euren saria. Zuk, barriz, barau egitean, igurtzi zeure burua usain gozoz eta garbitu aurpegia, jenteak ez, ezkutuan dagoan zure Aitak baino ikusi dagian zure baraua; eta ezkutuan be ikusten dauan zeure Aitak emongo deutsu ordainsaria».

**Jaunak esana.**

## HOMILIA

## ESKARIAK - HERRI OTOITZA

Senideok, usterik onenaz zuzendu deioguzan gure eskariak bizitzaren sortzaile eta betetzaile dogun Jainko Aita/Amari:

Eskatu daigun hilaren alde
Kristo bitarteko hartuz;
Gure otoitzak asko dagike
Harenarekin alkartuz.

**HARTU ZUK, JAUNA, HIL HAU ZERUAN**

**BETIKO BIZI-LEKUAN**

Heriotz' honek, ahaide ta lagun,
asko ditu jo ta mindu,
baina Jaunaren agintzak begi
min hori goza ta arindu.

**HARTU ZUK, JAUNA, HIL HAU ZERUAN**
**BETIKO BIZI-LEKUAN**

Lehen joanak ere izan begiz
gure otoitzak gogoan;
guztiak batu daizala Jaunak
bere maitezko altzoan.

**HARTU ZUK, JAUNA, DANAK ZERUAN**
**BETIKO BIZI-LEKUAN**

† Zeuk salbatzen dozuz, Jauna, gizaki guztiak, eta zure gogoa inor ez galtzea dan ezkero, entzun, arren, zure herriaren eskariak. Jesukristo.

**Oparien gainekoa**

Bete dozu, Jainko ona, zeure zoriontasunean
**I.**ri egin deutsozun bizitzearen dohaia;
haren gomutaz egiten deutsugun opari honen bidez
aurkitu daigula alkarrenganako begiramena
eta senide behartsuen alde jarduteko grina.
Jesu Kristo.

**Prefazioa**

Jauna zuekin...
Gora bihotzak…
Eskerrak Jaungoiko gure Jaunari…

Egoki da, bai, eta zuzen, bidezko eta salbagarri,
nonahi eta beti guk Zuri eskerrak emotea,
Jauna, Aita guztiz santu,
Jainko ahalguztidun betiko horri,
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

Beragan argi egin deusku
biztuera zoriontsuaren itxaropenak
eta nahitaez hil beharrak goibeltzen gaituanok

gero hilezkor izango garan hitzak pozten gaitu.

Zure zintzoei, Jauna, bizia ez jake kentzen,
aldatu egiten jake,
eta, lurreko bizileku hau hondatzean,
betiko bizilekua esku**ra**tzen dabe zeruan.
Horregaitik aingeru eta goiaingeruekin,
ahalmen, nagusitza eta zeruko talde guztiekin,
zure aintzari gorazarre hau
beti eta beti [esaten] abesten deutsagu:

SANTU, SANTU, SANTUA...

## II. EUKARISTI OTOITZA

**Santu zara**, bai, Jauna,
eta santutasun guztiaren iturri;
egizuz, bada, santu ogi-ardao honeek,
zeure Espiritua isuriz,
Jesu Kristo gure Jaunaren Gorputz eta † Odol
egin daitezan guretzat.

**Berak**, saldu ebenean
eta bere gogoz kurutzera joiala,
ogia hartu eta, eskerrak emonez,
zatitu eban
eta bere ikasleei emon eutsen, esanez:

HARTU EIZUE ETA JAN GUZTIOK HONETATIK:
HAU NEURE GORPUTZA DA-ETA,
ZUENTZAT EMONGO DANA.

**Era berean**, afalondoan,
kaliza harturik,
barriz ere eskerrak emonez,
bere ikasleei emon eutsen, esanez:

HARTU EIZUE ETA EDAN GUZTIOK HONETATIK:
HAU NEURE ODOLAREN KALIZA DA-ETA,
ITUN BARRI ETA BETIKOAREN ODOLA,

ZUENTZAT ETA ASKORENTZAT
PEKATUAK PARKATZEKO ISURIKO DANA.
EGIZUE HAU NEURE OROIGARRI.

**V/.** Hau da sinismenaren misterioa.

**R/.** Zure kurutze ta biztueraz,
munduaren Salbatzaile zarana
salbau gagizuz, Jesus Jauna.

**Horregaitik**, Jauna,
zure Semearen heriotza eta biztuera gogoratuz,
biziaren ogia eta salbamenaren kaliza
eskeintzen deutsuguz,
Zuri eskerrak emonez,
altaran zeure zerbitzari onartu gaituzulako.

**Eta apalik** eskatzen deutsugu,
Kristoren Gorputza eta Odola hartzen ditugunok
Espiritu Santuak bat egin gaizala.

**Izan gogoan**, Jauna,
mundu guztian zabaldurik dagoan zeure Eleizea;
eroaizu maitasun osora,
**Frantzisko** gure Aita Santuarekin,
**Joseba** gure Gotzainarekin,
*(I. Gotzain Laguntzailearekin,)*
eta eleiz gizon (-emakume) guztiekin batean.

**Era berean**, izan gogoan, Jauna,
gaur mundu honetatik zeugana eroan dozun
**I.** zure zerbitzaria / mirabea;
zure Semearekin bat egin dan hau
biztueran ere bat izan dadila.

**Baita izan** gogoan, Jauna,
bizteko itxaropenean joan diran gure senideak
eta hildako guztiak ere;
hartu egizuz zeure aurpegiaren argitan.

**Erruki zakiguz**, arren,
guk guztiok betiko bizitza jaritsi daigun,
Jainkoaren Ama Maria Birjina dohatsuarekin,
haren senar Jose santuarekin,
Bartolome eta Tomas,  eta beste Apostolu santuekin
eta, gizaldi guztietan,
zure adiskide izan diran santuekin;
eurekin batera goratu zaiguzan,
Jesu Kristo zure Semearen bitartez.

HONEN BITARTEZ, HONEKIN ETA HONENGAN,
ZURI, JAINKO AITA AHALGUZTIDUN HORRI,
ESPIRITU SANTUAREKIN BATEAN,
OSPE ETA AINTZA GUZTIA
GIZALDI ETA GIZALDI GUZTIETAN.

**Amen.**

† Salbatzaileak agindu eta irakatsiari jarraituz
bildur barik esan dagigun.

**GURE AITA** zeruetan zarana
santu izan bedi zure izena,
etor bedi zure erreinua,
egin bedi zure nahia
zeruan bezela lurrean ere.
Emoiguzu gaur egun honetako ogia;
parkatu gure zorrak
geuk ere gure zordunei
parkatzen deutsegun ezkero;
ez eiguzu itzi tentazinoan jausten,
baina atara gagizuz gatxetik.

† Atara gagizuz, Jauna, gatx guztietatik, emoiguzu bakea gure egunotan, zure errukiari esker pekatutik garbi bizi izan gaitezan eta estualdietan sendo; betiko zorionaren itxaropenean Jesukristo gure Salbatzailea noiz etorriko dan zain gagozela.

—Zeurea dozu erregetza; zeureak ospe ta indarra orain eta beti.

† Jesukristo gure Jauna, zeuk esana da apostoluei ‘bakea izten deutsuet, neure bakea emoten’; begira zure Elizearen sinismenari eta ez gure pekatuei, eta zeure gogoa danez, emoiozu Elizeari bakea, emon batasuna, errege bizi zara-ta, gizaldi eta gizaldietan.

—Amen.

† Jaunaren bakea beti zuekin.
—Eta zure espirituarekin.
† Emon deiogun bakea alkarri.

Jaungoikoaren Bildotsa,
zeuk kentzen dozu munduko pekatua: Erruki, Jauna.
… emoiguzu bakea.

Gizadiak, maite mina. / Izadiak arreta-mina
Etorkinak herri-mina. / Herri honek bake-mina.
Laborari ta langile / sinestedun ta bilatzaile
bidez-bide, kalez-kale / izan gaiten bake-egile.

**Jaunartzea**

† Hona hemen Jaungoikoaren Bildotsa, hona munduko pekatua kentzen dauena: zoriontsuak honen mahaira deituak:

—Jauna, ni ez naz inor zu nire etxean sartzeko,
baina esaizu hitz bat eta osatuko naz.

**JAUNARTZEAN**

**Jauna, ez nekien Zu nor zinen**,
ez nor zinen, ez bazinenik;
ni baina zure bila nenbilen,
ez neban inon atsedenik.

Nire gauak oihu egin eutsun,
dana ilun, dana oztopo;
Zuk argiz besarkatu ninduzun,
Zurekin egin neban topo.

Orain badakit nor zaren, Jauna,
nor zaren eta neu nor naizen;

nire bihotzak behar ebana
ai!, zure maitasuna baitzen.

**Jaunartze ondoren**

Sakramentuotan esku hartu dogunok, Jauna,
zeuganako uste onez bete gaituzu
eta hildako gure senide **I.** zeure zorionean dala
somatzea emon deuskuzu.
Arren eskatzen deutsugu
zugandiko poz honen zabaltzaile izan gaitezala.
Jesu Kristo.

**ERRESPONSOA EGITERIK BALEGO**

Hildako gure senideari azken agurra emotean, bateatua izan dala gogoratzen dogu uraz zipriztinduz; hantxe iragarri zan Jainkoaren semea/alabea zala Jesukristorengan. Orain honen berbiztean esku hartzen dauala iragarriko dogu, itxaropenez, abesti artean.

**Heriotzeak desegiten dau** bizi-lekua munduan.
Baina zuk, Jauna, hartzen gaituzu zeure etxean, zeruan.
Joan jakuna onartu, Jauna, zeu bizi zaran lekuan.

Jaunaren nahiez aurkitzen gara agurtzera behartuak;
baina zeruko pozak daizala txukatu negar-malkuak.
Honen bidera beitez atera aingeru eta santuak.

Gure arteko gertakizunek ezbehar asko dakarte;
alkar maitatzen dogunok ezin bizi geintekez aparte.
Jainkoa lagun, esan dagigun: «*Agur, Egun handirarte!*»

**OTOITZA**

Betiko bizitzearen argitasunaz
gure negar-malkoak txukatzen dozuzan
Jainko Aita, bizitzearen Egilea:
entzun gure otoitz gartsua
eta hildako gure senide **I.** zeure altzoan dala jakiteak
biztu daiala gugan sinismen argitasuna
eta egunero zu otseintzeko (zerbitzeko) gogoa.
Jainko eta errege bizi zara-ta, gizaldi eta gizaldietan.

—Amen.

**Monición final (despedida)**

Gracias a los lazos con **N.**, hemos disfrutado de buena compañía y hemos tenido la oportunidad de escuchar la palabra de Dios. Salimos con el gozo de que él ha dado plenitud a la vida de **N.** en su regazo.

Egunerokora bihurtzerakoan, eroan daigun Jainkoaren hitzaren inguruan alkartzeko euki dogun aukerearen poza, eta egunero gizakiagoak izateko gogoa. Horretan ez deusku hutsegingo Jainkoak, **I.ri** bere altzoan betetasuna emon deutson Jainko Aita-Amak.

## Azken kantua

AGUR, SENIDEA,
AGUR: GERO ARTE,
BIDE ARGITIK KRISTOGAN
AITAK BARRIZ BATU ARTE.

Emon, Jauna, emon
betiko etxea
itxaron daigun, itxaron
Zugan betiko bizitza.

AGUR, JAUNAK,
jaunak, agur, agur t'erdi.
Denok Jinkoak einak gire
zuek eta bai gu ere.
Agur, jaunak, agur,
agur t'erdi hemen gire.
Agur, jaunak!

---

**AZKEN ONESPENA**

† Jauna zuekin.
—Eta zure espirituarekin.

† Bedeinka zaizela Jainko ahalguztidunak:
Aitak eta Semeak eta Espiritu Santuak
—Amen.

† Zoaze Jaunaren bakean.
—Eskerrak Jainkoari.